—Pobreziatik eta bazterkeriatik urten ezinik dagozan herrialdeek kanpo zorra ezabatu dakiela lortu daien, eta baita garapenerako behar daben laguntza ere…
—On egin nahian dihardduen guztien bihotzean leku izan daian Jesus Jaunaren berbeak eta keinuak…
—Gaurko gizakiak miresmenez begiratu deion Izadiari, eta haregaz bat egitea bilatu daian, Jainkoaren aintzarako…

† Jesus Jauna: markatuta itzi gaizala zure keinuak, eta senidearen zerbitzura eroan gaizala, zeu zaitugu-ta gure Jaun eta Jauna.
—Amen.

**Amaitzeko**

Azken Afari ezkeroz, Jauna,
gure janari zu zera.
Agindu gozoz lotu gintuzun
zure gorputza hartzera.
Ogia bide gara iristen
gure gorputzak lotzera,
zugatz-gerria adarrarekin
bat egiten dan antzera.

Batasun honek eskatutzen dau
animak ere bat egin;
buru-bihotzez bizi gaitezan
bat eginikan zurekin.
Zaran osoa eskeintzen zara
izanez gure atsegin.
Zuk jarritako maite-legean
ez genduko nahi hutsegin.

**Bedeinkapena**



## 2020ko EGUEN SANTUA

**Sarrera-oharra**

Aurtengo Eguen Santu hau, senideok, ez da orain artekoen langoa: pandemia baten sabelean gagoz eta urduri, ez-jakinean, eta kanpora urten guran. Barruak bildurtu egiten gaitu, antza; urduri jarten gaitu.

Eroan gaizala, ba, egoera honek Eguen Santua *era barri baten* bizi izatera. Ba dakigula zer dan eta zer esan gura dauan alde batera laga, eta ez bagengi lez hurreratu gaitezan: arreta handia jarriz, eta **esateko** baino **entzuteko** gogo handiagoaz.

Gaurkoan Otoitzari, hausnarketeari eta, guzti hori sustatzen dauan Jainkoaren Berbeari lotuko gaiakoz. Abestuz emon deiogun, ba, hasierea Hirurren Santu honi…

**Sarrera abestia**

1 Zure besotan, oi kurutzea,
hil jaku Jesus maitea.
Haren kurutze ezartzailea
neu naz, neu, pekataria.

**Oi kurutzea, oi kurutzea**
**kurutze santu maitea.**

2 Jesukristoren odolak zaitu
Kalbarioan gorritu.
Ezerk geroztik munduan ez dau
zuk bezainbat distiratu.

† Aitaren eta Semearen eta Espiritu santuaren izenean.
—Amen.
† Behartsu agertu gaitezan on guztien iturri dogun Jainkoaren aurrean:

—Jesus Jauna, Jainkoaren esanetara bizi izan zinana. *Erruki, Jauna*.
—Jesus Jauna, Jainkoaren maitasuna erakutsi zeuskuna. *K. erruki*.
—Jesus Jauna, Zeure irakatsietan gura gaituzuna. *Erruki, Jauna*.
† Erruki dakigula Jainko guztiz ahaltsua, eta gure pekatuak parkaturik, eroan gaizala betiko bizitzara.
—Amen.

## Aintzarako sarrerea

Ba daukagu Jainkoa aintzaltzeko zio edo motiborik? Ohiko gure ikuspegi kaxkarrean jarraitu ezkero, ez; baina Jesus Jaunaren ikuspegitik… egoerarik eta latzenean eta bildurgarrienean ere goretsi geike Jainkoa, eta horrela goretsi inoren alde euren bizia emoten daben guztiak. Hainbat aitatzen doguz egunero txalo artean. Abestu daigun:

† *Aintza zeruetan Jainkoari*.
—Bakea lurrean gizonari.

* Hain handi eta eder zaitugulako, gora zu, bedeinkatua zu, eskerrak zuri.



gauzatzen dauana?

Jesusek ez dauz gauza onak egiten, egun baten lortuko dauan sariaren ustetan. Jesusi barrutik urteten deutso Jainkoaren ontasunak, haregaz bat eginda bizi dalako. Horrela, on egitea, laguna maitatzea…, haren zerbitzuan, haren morroi izatean, agertzen dau.

Keinu honen aurrean, non gelditzen dira gure usteak, ohiturak, jakintzak eta sari itxaroteak? Ulertu ete dogu Jesus, eta geuretzen ete dogu haren keinua? Jainkoak jaun eta jabe egin gaitu, eta, gure jauntasuna, senideak zerbitzean baino ezin daiteke gauzatu. Eta horixe da Jainkoak emoten deuskun saria. Onartuko ete dogu?

Eukaristiak ez deusku, ba, gauza onak egiteko indar emoten. Han gure esker ona agertzen dogu, eta Jainkoak alkarren zerbitzari egin gaitula ospatzen.

## HERRI OTOITZA

† Jesusen keinuari jarraituz, egin gaitezan bat, otoitzaren bitartez, euren bizitza besteen alde emoten daben guztiekaz, geure eskeintzea ere bideratuz:

—Jesusen gorputza Eliza honetan osotzen dogunok, zerbitzu bizitzaz gauzatu daigun Jesusen jarraitzaile izatea. *Egin daigun otoitz*.

**EGUEN SANTUKO ESKARIETAN**

*Batek* — *Dansk*

V/. E - gin dai - gun o - toitz. R/. E - gin gai - zuz zeu - gaz bat, Jau - na!

—Gure nagusikeriak bazterreratzen dauzanen ondoan lanean diharduenek gure txaloak eta esker ona jaso daiezan…

a) *Jesus mahaitik jagi, soingainekoa erantzi eta, esku-zapia harturik, gerrian lotu eban*... (**jagi, erantzi, hartu, lotu**).

Mahai-zaina mahaitik jagiteak, gauza harrigarria izanik, zeozer garrantzitsu baten aurrean jarten gaitu. Harrituta laga behar gaitu, eta arretarik handienaz begiratu behar dogu zer egin behar dauan.

Soin-gainekoa erantzi... Ulertu geike keinu hau bere Jainkotasuna erazte lez? Ba dauka horretarako ahalmena Jesusek: berak eranzten dau bere burua...

Esku-zapia hartu... Soingainekoaren (ahaltsuaren ezaugarria) ordez, esku-zapia (morroi ezaugarria) hartzen dau. Jokoz kanpo izten gaitu honek.

Gerrian lotu eban: «*hauxe naz ni*» esate lez. Bai: soin-gainekoduna eta esku-zapiduna bat bera dira. Soingainekoak ez deutso Jesusi esku-zapiduna izatea galazoten. Alderantziz baino.

Geratu gaitezan unetxo baten koadro hori begiztatzen: *mahaitik jagi, soingainekoa erantzi, esku-zapia hartu eta gerrian lotu*...

b) Eta goazen beste koadrora: Jesusek egiten dauanaren aurrean zein dan Pedroren jarrerea...

Jesus morroi-lanetan jarten da. Hau ezelan ere ezin dau onartu Pedrok, «*Zu Mesias zara*» erantzun eutsonean Jesusek hori inori ez esateko agindu baeutson ere. Oraindino ez dau ulertu. Oraindino Mesias ahaltsu, menperatzaile eta beste guztien gainetikoa itxaroten dau, ez euren oinetara makurtuta dagoana...

Jesusek beste marka bat itziko deutso barruan Pedrori: «*Garbitzen ez bazaitut, ez dozu nigaz zer ikusirik izango*». Pedrorentzat hori larregikoa da: edozer, Jesusengandik urrundu aurretik.

Hortxe geratuko gara. Ulertu ete dau Pedrok? Ulertu ete dabe ikasleek? Ulertu ete dogu guk, geuk... Jesusek dinoskuna,



* Jainko Jauna, zeruko errege, Jaungoiko Aita ahalguztiduna: gorespen zuri.
* Jesukristo Jainko Jauna, Aitaren Seme, zeuk kentzen dozu munduko pekatua: erruki, Jauna.
* Zeu bakarri santua, Jesukristo, Espiritu santuarekin, Jainko Aitaren argitan.

## OTOITZA

Otoitza salmoaren laguntzaz egingo dogu. Kaliza, eskeintza, alkartasuna... aitatzen doguz. Horixe autortuko dogu Jainkoaren gogoko: geure burua eskeintzea opari lez, eta horretan danok bat egin daigula Jesus Jaunaren eskeintzan.






Jaunari zer deutsot bihurtuko
egin deustazan guztiekaitik?
Salbamen-edontzia dot hartuko,
eta Jaunaren izena deituko.

Jaunaren begietan balio handikoa
haren zintzoen herioa.
Zure neskamearen semea, zure morroi nozu, Jauna,
askatu dozuz nire kateak.

Eskeiniko deutsut gores-oparia,
deituko dot, Jauna, zure izena.

Emongo deutsodaz Jaunari zin egindakoak,
herri guztia begira dagoela.

## Ebanjelioa

Iragarri daigun Ebanjelioa. Arretaz entzungo dogu, Jesusen keinu guztiak begiratuz, iruntziz. Ez da jazo zanaren kontakizun hutsa; Jesusek, bera ulertu ezin eben ikasleei emoten deutsen azken hitzaren gauzatzea da. Gure *jakintza* guztia pikutara bota daike; egoera barri baten jarri geinkez. Lotu gakiozan berbea eta bizitza bat egin dauzan Jesusi.

**† Jesukristoren ebanjelioa san Joanen liburutik Jn 13, 1-15**

Pazko-jai aurrean, ikusi eban Jesusek etorri jakola mundu honetatik bere Aitagana joateko ordua, eta munduan egozan beretarrak maite izanik, azkeneraino maitatu zituan.

Afaltzen egozan. Ordurako arerioak buruan sartuta eukotson Judasi, Simon Iskarioteren semeari, Jesusen saldukeria egitea. Jesusek jakinik Aitak gauza guztiak eskura emon eutsozala, Jaungoikoagandik etorrela, eta Jaungoikoagana joiala, jagi zan mahaitik, erantzi eban soin-gainekoa, eta esku-zapi bat harturik, bere gerrian lotu eban. Gero, ontzi bat urez bete, eta ikasleei oinak garbitzen hasi jaken, eta gerrian eukan esku-zapiaz sikatzen.

Pedrogana heldu zanean, honek esan eutson: «Jauna, zuk niri oinak garbitu?» Eta Jesusek: «Zuk ez dakizu ni orain egiten nabilana; geroago ulertuko dozu».

Pedrok: «Zuk ez deustazu niri behin ere oinik garbituko». Eta Jesusek: «Garbitzen ez bazaitut, ez dozu zerikusirik nigaz».

Simon Pedrok orduan: «Jauna, ez oinak bakarrik, baita eskuak eta burua ere». Jesusek erantzun eutson: «Garbitu bat hartu dauanak ez dauka oinak garbitu beharra baino, beste dana



garbi dago-ta. Zuok ere garbi zagoze, baina ez guztiok». Baekian nork salduko eban, eta horregaitik esan eban: «Ez zagoze garbi guztiok».

Oinak garbitu eutsezanean, soin-gainekoa hartu, eta barriro mahaian jesarrita, esan eutsen: «Badakizue zer egin deutsuedan? Zuek “Maisu” eta “Jaun” esaten deustazue; eta ondo esana, horixe naz-eta. Maisu eta Jaun izanik, oinak garbitu badeutsuedaz, zuok ere bardin garbitu behar deutsozuez oinak alkarri; jarraibidea emon deutsuet, Nik zuoi egin deutsuedana, zuok ere egin dagizuen».

**Jaunak esana**

## HAUSNARKETEA

Ba dakigun arren, hauxe azpimarratu daigun: Beste ebanjelarientzat ogi-ardauak dira Jesusen eskeintzaren ezaugarri. Joanek, horren ordez, Jesus ikasleei oinak garbitzen jarten deusku.

Jatsi gaitezan detaileetara; ez, gero, jakiteko edo ulertzeko, Jesusegaz bat egiteko baino.

Horra aurretik, autortu daigun gure ez-jakina, gure zekenkeria eta ziurkeria: Jainkoak egun baten gure egintza onak sarituko dauzala uste dogu, edo txarrak gaitzetsi. Egun baten... Halantze bizi gara: egun baten jasoko dogun sariaren edo zigorraren ustetan. Jesusek ordea, egunero jasoten dau Jainkoagandiko poza, eta zabaltzen dau. Ez da bizi egun baten eskuratuko dauan sariaren zain. Jainkoak oraindixik saritu lez bizi da; eta horrexegaitik ez dabe ulertzen, ez-eta bere ikasle eta lagunenek ere.

Egin daigun ahalegin, gure jakintza, ohitura eta usteetatik eta betekerietatik eta egun bateko saria lortu ustetik urteteko, eta Jesusen eskua hartzeko.

Joan ebanjelariak emoten deuskuzan detaileetatik bi baino ez doguz hausnartuko. Ea honek bakotxa bultzatzen gaituan bere hausnarketatxoa egitera...